A U R K I B I D E A :

"**Lunaren Goiztiri**" ez da giltzape edo sasian idatzitako lana. Gure planteamendua espetxe, sasi eta erbesteko literatura argitara ematea bada ere, bidea oraingoan alderantzizkoa izan da: herritik gartzelara doan bidetik etorri da gure eskuetara, zure eskuetara.

**Hau ez da ipuin bat**

Juan Luis Mugertzak Jaen II espetxera egindako bidaiaren lekukotasuna utzi nahi izan digu, bizi izandakoa kontatu beharra ikusi zuelako, eta horrela argitaratu dugu, etorri den bezala, Gatzak espetxean 25 urte egitera doanean argitaratu ere.

Espetxeko literaturan fikzioa eta errealitatea nahasten dira normalean. Azken batean, literaturak errealitatea bideratzen du, bidea irudiz marraztu eta bertatik eramaten du irakurlea.

Kasu honetan pertsonaia guztien izenak benetakoak dira. Errealitatea fikzioaren gainean idatzi da, eta tragedia modura aurkez zitekeena ipuin harrigarri bilakatu da Goiztiri, Kontxa, Gatza eta gainerako euskal preso politikoen eta euren senitarteko eta lagunen bizipenetan.

**atara**miñen aldetik eskerrak eman nahi dizkiogu Juan Luis Mugertzari. Telefonoz deitu, hitzordua jarri eta lana ikusi orduko martxan jarri ginen, presoen senitarteko eta lagunen jardunaren erakusgarri hau Gatzaren omenaldira ekartzeko. Liburu txiki bat ibilbide handi batentzat.

**atara**miñe. 2005.eko uztailean

# ERREPIDEKO HAURRAK

Goiztiri protagonista izango zuen ipuin bat idatzi zutela esan zidatenean oso ideia polita iruditu zitzaidan. Conchak, Goiztiriren amak, euskaraz ez dakienez, irakurtzeko eskatu zidan: "Amaia, lee esto y dame tu opinión, no quiero hacer un circo con la niña". Geroago, norbaitek, hitzaurre bat egiteko eskatu zidan. Hau erantzukizuna! Nik ez dut inoiz horrelakorik egin. Azkenean, Conchari esan niona idaztea bururatu zitzaidan. Ez dakit bete beharreko helburua beteko duen, hitzaurre izatearena, alegia. Baina Conchari balio izan badio, niretzat nahikoa da.

Lehen orrian "Lunaren Goiztiri" irakurri nuenean, gogotsu hartu nuen ipuina. Gure Goiztiritxu ipuin bateko protagonista bihurtu zen. Oraindik berak ezin izango du ipuin hori irakurri, bere amak ere nekez irakurri ahal izango dio. Baina berdin da, irakurri gabe ere Goiztirik badaki zer den ipuin horretan irakurriko duguna, paperean agertzen den bezala bizi duelako hilean behin.



Irakurtzen ari nintzena baino esanguratsuagoa iruditu zitzaidan lerro artean, hizki artean, ezkutatzen zen mezua. Tristura eta pozaren arteko muga zehaztugabea. Tristura, maite den pertsona hori norberarekin ez dagoelako; poza, maite den pertsona hori ikusiko dugulako. Nekea eta indarra nahastuta. Nekea, hain bidaia luzea egiteak sortzen duen tentsioagatik. Indarra, preso dagoenak transmititzen duen indar hori bueltatu behar zaiolako. Maitasuna eta gorrotoa elkarren segidan. Maitasuna, norberaren senidea ikustera bultzatzen duena. Gorrotoa, sarrerako funtzionarioak bere jarrera prepotentearekin adierazten duena, eta begirada soil batekin berari bueltatzen zaiona.

Esku artean daukazuen istoriotxoa irakurtzean, dispertsioaren odisea azalean bizi ez

baduzue, auto horretan (edo dispertsioaren bidaia egingo duen beste autoren batean) sartzeko gonbitea luzatzen dizuet. Eser zaitezte ezagutzen duzuen familiar horren aldamenean, jolas ezazue preso horren seme edo alabarekin eta konparti itzazue euren bizipenak. Era horretan ulertuko baituzue benetan, dispertsioa ez dela soilik kilometroetara mugatzen.

Ni, Goiztiriren ondoan eseri nintzen, baina bidaia aurrera zihoan heinean, Goiztiriren lekuan Malen, Mikel, Araiz, Haretz, Peru, Izar, Axular, Onditz, Ander, Amaiur, Ibai, Enaitz, Asier, Xabi, June... agertu zitzaizkidan. Asteburuetan irribarrerik handiena jantzi eta ilusioz euren aitatxo edo amatxo ikustera joaten diren haurrak. Aitatxok edo amatxok zer nolako ezusteko polita emango dien pentsatzen, etxetik ehunka kilometro egitera ateratzen direnak.

"Errepideko haurrak", nire lagun batek esaten duen bezala, eta ez du arrazoirik falta. Haur horiek, euren bizitza laburrean, gutako askok baino kilometro gehiago egin dituzte. Berdin da gauez zein egunez, berdin da autoz zein autobusez; guretzako oso astun gertatzen den bidea, eurek, inprobisatutako jolas eta kantuen laguntzaz burutzen dute.

Pozez beteta joaten dira, han urrutian, eurek baino pozago aita edo ama zain edukiko dutelako. Maitasunez beteta, euren seme-alabekin ordu pare bat pasatzeko irrikaz. Han egongo dira Gatza, Kepa, Jagoba, Ainhoa, Pako, Irantzu, Xabier, Unai, Exabier, Maitane, Iñaki, Peio, Pipe, Gautxori, Sergio, ... bihotza eta besoak zabalik dituztela.

Bihotza eta besoak zabalik edukiko dituzte bai, baina baita kentzea zaila egingo zaien beldurraren sentimendua ere. Euren familia errepidean dagoela jakiteak eragiten dien beldurra. Hor ere, sentimendu gazi-gozoaren nahasketa. Askatasuna maitatu eta horren alde borrokatzen duenak sarritan sentitzen duen sentimendua. Hamarkada luzeetan zehar milaka Euskal Herritarrok sentitu duguna, eta honek bere horretan jarraitzen badu sentitu beharko duguna.

Gure Goiztiri Euskal Herrian zabalduko den ipuintxo baten protagonista egin dute. Ziur naiz ez duela arazorik izango protagonismo hori, berak bezala, aitatxo edo amatxo espetxean duten haur guztiekin konpartitzeko. Baina, izan daitezela hauek istorio hau konpartitituko duten azken haurrak. Eta era berean, hemendik urte batzuetara, ez daitezela haur hauek kaiola

barruan dagoen txoriari egindako beste istorio baten protagonista izan.

Gu guztion esku dago. Gure haurrek benetako askatasunean, justizian eta bakean oinarrituko den Euskal Herri bat merezi dutelako, guztion konpromisoa eta lana beharrezkoak dira.

Balio dezala "Lunaren Goiztiri"k kontzientziak piztu eta amets horretan emandako urratsei beste asko gehitzeko.

Nire besarkadarik handiena eta omenaldirik zintzoena Euskal Preso eta Iheslari Politikoen senitarteko guztiei.

*Amaia Sarrionandia.*

ZORNOTZA,

2005.EKO EKAINEAN.

# JOSE MARI SAGARDUI MOJA **"GATZA"**

Mutil errubixua, amaren sabeletik sortua,
bularreko haurrak Arrigorriagan zuen jatorria.
Matadero kalean gaztetan hazi eta bizia,
Humedad auzoan zein Ogenan ere ibilia.
Zornotza akademian erdizka ikasi eta hezia,
geroztik "Gatza" goitizenez ezagutu genuena.

Ezagutzen zuen ia jende guztiak
zekien mutil leial eta zintzoa zela
pixka bat bihurria eta xelebrea,
aldiz, egoera berezia suertatzen zenean
sua izetuz gero berotu/piztu ere
ziztu bizian egiten omen zena.

Isilean ere umila, bere tokian egoten zekiena
helduekin xumetasun osoz (entzuten) jakina,
nagusien aholku eta esamesak entzun eta
"efektibamente" zein "bai por cierto" esanez.

Ikasketak azkar bukatu ezinbestean,
laster amaitu zuen mekaniko karrera.
Esku-mailuz ala ingles-giltzaz prestua,
"Maravillas" zuen bere erremintaren izena.
Edozein gauza konpontzeko erabat jaioa:
pistoi, gurpila, motore edo katia.

Oso trebea zen bizikleta zein motor gainean,
baita ere sokamuturrean zezenaren aurrean,
lurrera jausiz gero altxatzeko pronto batean,
berehala txuflan jarraitzeko festaren batean.

Uztaileko egun baten Zornotzar hamabi gazte
eraman zituen poliziak lotuta zoritxarrez.
Lehenik komisariara, zulo beltz batera,
Beste tunel baten gero, makina bat urtez.
Habian gatibu, irten barik,
txoriari hegoak ebaki bazizkioten legez.

Goizeko argi berria etorriko denez,
zure itzulera itxaroten gaudenok,
egun hori helduko dela ziur gaudenez,
Goiztiri, zure alabatxoaren, irribarrea
ikusten dugu zeure ordez.

**Joxean Etxebarri, Zornotzan, 2005.eko ekainean.**

# Mendiaren itzala

Hamabost aldiz urtero
bisita-bide, uher okerrak;
Bi guardien erdian eta soa
lehioetara iheska,
Mendiaren itzala,
dator argitara.
"Zubirá" heltzen naizenean,
egunez,
Goizeko hamarrak aldera
han zatoz
nire presentzia ikustera.

Laino eta edurrak
estaltzen dizute
dekozun Gailurra.

Haitz sendoa zara,
Horrenbeste aulki-harriz jantzia
Ekaitzen galernari irauteko,
haizeak
albotik jotzen zaituenean.

Urak zabaltzen dizu
bide eta tximurrak,
Untzi errekak
topetan zoazenean.

Haitzuloetan alkor
Preminazkoez gordeta dekozu,
barruko ertzetan.
Zugaz irudi hoberenetakoak eldu ninduan,
Konkor gainetik
Gure Herria urrunera ikusterakoan.

**J.M. Sagardui Moja, *Gatza*.**

*Kartzelako leihotik*. Joseba Arregi Erostarberen liburuan agertutako poema, *Gatza*k sinatua. **atara**miñe 2004.





## Jose Mari Sagardui Moja "*Gatza*"

(1958.05.04) Zornotzan atxilotu zuten 1980ko uztailaren 8an, eta harrez gero Espainiako espetxe ugari ezagutu ditu: Carabanchel, Soria, Puerto I, Herrera de la Mancha, Alcala Meco, Hospital Penitenciario Carabanchel, Herrera de la Mancha, Sevilla II, Mallorca, Sevilla I, Granada, Hospital Penitenciario Carabanchel, Sevilla II, Puerto II, Jaen II, Langraitz eta Jaen II. Orain espetxe honetako isolamenduko moduloan dago.

25 urte hauetan egindako ibilbide luzean, Concha ezagutu eta ume bat eduki dute: Goiztiri, bizitzan aurrera egiteko beren adore eta ilusioaren erakusgarri argiena.

Bestela ere, ihesaldi saiakera batean harrapaturik (Granada 1993.03.06), espetxe zigorra luzatu zioten erredentzioak kenduz eta zigor gehiago erantziz.

*Kaiola bat txoria baitan*

*Lorontzia lorea baitan*

*Kartzelek egiten gaituzte preso*

Goiztiri etxeko logelan dago amari begira, baina ama ez da jabetu. Ama belauniko dago armairuko tiraderak zabaltzen eta ixten, eta batetik prakak, bestetik alkandorak, eta beste askotatik ametsak atera ditu gero maleta batean gordetzeko. Amaren atzamarrek kili–kili eragin diete txukun lisatutako kamisetei besapeak ukitzean, eta hauek barre egin dute. Goiztirik ere oso gogoko ditu amaren fereкak, eta apur bat jeloskortu egin da. Eta orduan, Goiztirik eztula egin du amaren arreta izateko, eta honek musu bat eman dio kopetan nola maite duen adierazteko.

– Ezer falta dugu, Goiztiri? Kamiltxo ez duzu eramango, ala?

Goiztirik ez dio erantzun. Goiztiri urduri dago: hitzak preso ditu bere buru txikiaren barruan. Gaur Goiztirik eta amak auto batean kilometro asko egingo dituzte bihar aita ikusteko, eta gasolinarik gabe gelditu da bere mingaina.

– Euria ari du, ezta?

Euri tanten danborrak gogor ari du, dakarrena igarri nahiko balu bezala. Inolako errukirik gabe, inolako lotsa gabe, geziak jaurtitzen dihardu. Goiztirik logelako leihora hurbildu, ormaren kontrako aulkiaren gainean zutitu, eta tantak ikusi ditu kristal joka aterpe bila. Gero, eramango duen autoa margotu du eskuineko erpuruaz lurrunezko arbelean eta astiro–astiro urrunduz joan da. Goiztiri oraindik txikia da errepidearen arriskuaz jabetzeko; berak ez daki oraindik autoak askotan errepidearen putzuetan irrist egin, eta kaskarreko handiak hartzen dituenik.

– Dirua, nortasun–agiriak... Zer gehiago behar dugu, Goiztiri?

Goiztirik horrelakoetan ez dio ezer esaten amari, baina amaren buruak ziba bat dirudi etengabe bueltaka.

– Aita ez aspertzeko egunkari eta liburu batzuk hartuko ditut, eta nire maitetxoaren haginetan lozorroan geldititutako janari zatiak garbitzeko...

– Hortzetako pasta eta... hortz–zepiloa.

– Ondo, ezta?

Bitartean, Goiztiri korridoreko orman eskegitako aitaren argazkiari begira gelditu da, Belatxikietako tontorrean egindakoari, mila aldiz ikusi duenari. Harkaitz baten gainean dago eserita praka motzetan, bota handiak eta lokaztuak. Orkatilen bueltan hazkura ematen zuten orduko artilezko galtzerdi lodiak ditu jantzita, eta buruan txapela. Barrez dago, begiak hertsirikiak eguzkiarengatik, "Ea, atera ezazu behingoz argazki hori!" esango balu bezala. Eta, orduan, Goiztirik ere barre egin du. Argazki horretan aitak bibotea du, eta Apario, Artaun, Bargondia, Lemoatxi... ikusten dira urrutian, pausatutako hodeiak bezala.

*DIN! DONG!* Txirrinaren hitzek Goiztiriren ametsen sarraila zabaldu dute, eta honek...

– Ama!

– Bai! Bai! Banator!

Etxeko sarreran gakoetan eskegitako bufanda Goiztiriren samaren bueltan kiribildu du amak, eta anakonda itxura hartu du.

– Jolin!

– Zer, estuegi dago, ala?

Gero, zira eta berokia jantzi, eta kalera joan dira harrapatakan etxeko emakumeak eskutik helduta. Hantxe zeuden zain Ander, Margari eta Juan Mari. Azken bi hauen semea Goiztiriren aitarekin dago.

– Arratsaldeon! –esan die Kontxak autoan sartu bitartean.

– Kaixo, Goiztiri! –Margarik.

– Ez dakit zer gertatzen zaion, baina gaur... ez dago oso berritsu –Kontxak.

– Ez da egia izango! –Juan Marik.

Goiztiri txikia da, baina eguraldiak bezala egun onak eta txarrak izaten ditu.

– Ander, poltsa hau? –Kontxak.

– Ekarri: atzean ipiniko dut.

Autoaren atzeko ateak ahoa zabaldu du Anderren eskuek lagunduta, eta elkartasun elikagaiez asebete du bere sabeltxoa. Gaur Juan Marik eta Margarik ekarritako *Megame Scenic* –a ez da eurena, alabarena da, propio utzita horrelako bidaia luzeak egiteko. Dena den, ez batak ez besteak ez du gidatuko, adinak jarritako mugak baldintzatu egiten baitu bidaiaren gogorra.

– Goiztiri, zer nolako katiuska politak dituzun! –Margarik.

– Putzuetan sartzeko dira.

– Ooo! –Kontxak.

– Goiztiri, sandwich bat ematen duzu ama eta Margariren erdian –Anderrek.

– Uuuu!

– Inbidia da, Goiztiri; inbidia kotxina –Margarik.

Goiztirik badaki ez dutela jango musuka ez baldin bada, eta gustura dago.

– Goiztiri, zeruak urez betetako plastikozko poltsa bat dirudi, eta apurtzen bada... –Juan Marik.

– Apurtzen bada, ezer ez! –esan dio Margarik– Eurikapusaia jantzi... eta plisti–plasta putzuetan!

– Begira zer daukan Juan Marik zuretzat –Anderrek.

Eta orduan honek esku artean duen jostailua erakutsi dio Goiztiriri:

– Eta orain..., bakoitzaren izena asmatu behar!

Pantailako botoitxoa sakatu, eta animalia bakoitzak bere modura agurtu du Goiztiri: BEE! KURRIN – KURRIN! MIAU! ZAUNK – ZAUNK! TOK! TOK!

– Gustatu zaizu? –Anderrek.

Eta Goiztiriren buruak gora eta behera egin du.

– Zer esaten da horrelakoetan? –amak.

– Es–ke–rrik as–ko!

– Ez da gauza asko! –Juan Marik.

– Kontxa, itxi ondo atea, mesedez! –Anderrek– Gerrikoak jantzita ditugu?

– Bai jauna! –Juan Marik.

Atearen danbatekoa atzean gelditu da, baina autoak aurrera egin du. Eta orduan, Anderrek ahopeka zuzendu dio hitza autoari: "Ondo portatu txikito; ez egin kalerik, faborez!". Bai, hori dena eta zerbait gehiago esan dio, autoak eramango baititu okerrik gertatu ezean egokitutako lekura.

– Goiztiri! Galdera bat. *Beee*! Beeesterik ez al dute ikasi esaten ardiek?

– Juan Mari ganbaratik jota dago, ezta? –Margarik– Euskal ardiek ez dute *Beee* esaten, *Meee* esaten dute.

Goiztirik animalia guztien hotsak asmatu ditu batena izan ezik: Tok! Tok! egiten duen okilarena.

– Basoko txoriaren istorioa ez duzula ezagutzen! Lasai, neuk kontatuko dizut, Goiztiri; benetakoa da, ez pentsa! Belarriak zorroztu.

Etentxo bat egin, eta Juan Mariren irudimenak tipi–tapa egin du basoan gora Goiztiriren jakin–mina areagotuz:

– "Behin batean, basoko enborra siestan zegoen atearen tok!tok!tok! zaratatsuek esnatu zutenean:

– *Nor ote da ordu hauetan?* –pentsatu zuen enborrak.

Pauso batzuk eman, eta gangar gorria eta moko sendoko txori jator bat ikusi zuen:

– *Arratsaldeon, enbor jauna! Utziko didazu zulotxo bat egiten nire kumetxoak bertan bizi izateko?*

–*Horixe, baietz!* –erantzun zion enborrak, eta zera pentsatu zuen: *"Ze ongi dagoen hazita okila!"*

– Gustatu zaizu? –Margarik.

– Bai!

Lehenengo kilometroetan nagusien hitzak eta animalienak lehia gogorrean aritu dira nor baino nor. Gero, poliki–poliki, eleek indarra galdu, eta

pentsamenduen txanda heldu da. Kontxa alabari begira dago, eta haren aita ikusi du, bere bizitza errotik aldatu duena. Goiztirik oraindino ez daki zergatik duten etxetik horren urrun, baina dena ulertzen duela dirudi.

– Orain, Goiztiriren gustuko musika entzungo dugu. Zer iruditzen zaizue nagusiok? Ondo, ezta? –Anderrek.

– Baaiii! –Juan Marik.

–Batzuetan ez dakit nor den umeagoa –Margarik.

– Uuuu! –Juan Marik– Ikusi duzu Goiztiri ze ondo ikasi dudan *uuuu*, egiten!

Segundo pare bat baino ez dira izan musikak gordetako ahotsa entzuteko, baina Goiztiriri oso luze egin zaio; aspaldian zegoen itxaroten:

*"–Takolo, besaulki gainean ipurdiko mina jartzen ari zait. – Lasai, laster iritsiko gara eta! –Begira, Porrotx, begira han daude! –Egia da! Hantxe daude! –Goazen azkar, haurrak zain dauzkagu eta!"*

Mirari txiki–handi baten itxura hartu dute Takolo, Pirritx eta Porrotxen hitzek: Goiztiriren begi niniak biraka ipini dituzte, eta ezpainak lanean:

*"Erratza, erratza astindu hautsa.*
*Erratza, erratza astindu mototsa…"*

– Oso ondo, Goiztiri!

–Gure neskatxoa, nagusitan, pilotaria eta kantaria izango da –Juan Marik.

Kontxak ez du ozenki esaten, baina behin baino gehiagotan pentsatu izan du bidaia luze hauen aingeru guardakoak zerukoak baino CD horren ezkutukoak direla, bere eguneroko mintzagaietako protagonistak.

*"Iepa! Festa orain hasi da, istorio askoren habia, ireki ba galaxia, planeta handia da fantasia. Robin Hood nintzen nire arkurekin galtzak urrundu, pobreei lagundu..."*

Pailazoen fantasia itzali, eta errealitatearena piztu beharra izan dute. Ordainsarian kontrola dute zain. Euren egintzaren zati bat da, eta herritarren segurtasunerako egiten omen dute pistolaz eta metrailetaz armaturikoek. Gazte batzuk bide bazterrean daude eskuak gora eta buruak behera, eta hitza hitzik gabe gelditu da eguneroko bidegabekerien aurrean.

– Ama! Mutil horiek etxetik eramango dituzte?

– Ez maitea!

Poliziaren eskua automatikoki mugitzen da aspertutako autoak emeki–emeki bultzatuz. Laster euren txanda helduko da. Harrokeria keinuak balazta sakatzera behartu du Ander. Autoaren leihatilatik sartutako begiradak barrukoen sentimenduak xurgatzen ihardun du zer edo zer topatu nahian.

– Pueden seguir.

Berriro martxa. Berriro aurrera. Autoa arakatzen ibilitako pentsamenduaren zentzua ulertzen aritu da Kontxa tarte batean: Zer ote? Gorrotoa, hoztasuna, ironia...

– Gure moduko zaharrekin ez dute denborarik galtzen –Margarik.

– Hauen jomuga gazteak dira. Guk atzean utzitako gaztetasuna –Juan Marik.

Hasi da euria apur bat baretzen. Kontxari oso gustatzen zaio euria egin ondoren leihoa zabaltzean sartzen den haize hezea, belar usain bortitza, birikietan barrena hezur–guneraino sartzen zaiona; ezin hobea gogoetak ureztatzeko. Gero, buruari ondo eragin dio eta beldurra uxatzen saiatu da, baina bizitzak beldurrik gabe, mamurik gabe ez duela zentzurik pentsatu izan du; batzuetan jatekoa eman behar zaio dena hezur eta azal izan ez dadin.

– Gazteak direla eta, behin gaztetxe batean gertatutakoa kontatuko dizuet –Juan Marik.

– Ez faborez, berriro ez! – Margarik.

– Tira! Ez dut kontatuko.

– Kontatu! –Anderrek.

– Ezetz dio, baina irrikatan dago –Margarik.

– Nola ezagutzen zaituen andreak! –Kontxak.

– Urte asko elkarrekin! Urte asko!

– Behingoz kontatuko duzu? – Margarik.

– Santutxuko Sorgintxulon izan zen, orduan zabalik, baina gaur egun itxita dagoen gaztetxean. Txikito bat hartzera joan nintzen, bertan zerbitzatzen zegoen mutikoari eskatu: –*Atera beltz berezi bat rokero zahar honi.* Hango giroa dastatu, ordaintzera joan, eta…: –*Zenbat? –Jubilatuei ez diegu kobratzen.*

Momentuan barre egin nuen, baina ez dakizue zer nolako amorrua eman zidan.

– Fenomenoa zara, Juan Mari! –Anderrek.

Gasteiz, Burgos... Autoaren mugimenduek sigi–saga egiten dute Goiztirik eskolako koadernoan boligrafoz margotutako ibilbide arriskutsuan. Tartean, Anderren eta Juan Mariren hitzak piztu eta itzali egiten dira kilometroak egin ahala.

– Nola ikusten duzu gaur egungo egoera, Juan Mari?

Segundo batzuk isilik iraun du erantzuna eman aurretik.

– Futbol partida bat bezala. Iskintxoak eginez bizi gara jokalarien antzera: inoiz ezkerrera, askotan motzean, gehienetan eskumara, badaezpada, baina gutxitan aurrera.

Sistemaren kontra egiteak nekea, sufrimendua dakar askotan eta hori oso ondo dakite auto barrukoek, baina sistemari aurre egiten dionak bestelako poztasunak ere izan ohi ditu; heldutasunera lehenago heltzen da ur gaineko bitsetan dabilena baino. Gainera, kontra egiteak pentsarazteko aukera ematen du. Anderrek hilean behin besteen autoa hartu, eta bertakoak ikusteko ez bada, auto beharretan dagoen hori ekartzen du, beti irribarre ahoan duela.

– Gizaki gehienek aukeran laua dute nahiago aldapa baino, baina ez dira konturatzen inoiz ez direla punta–puntako txirrindulariak izango.

– Ez dakit jabetu zaren, Margari, baina filosofo bat duzu etxean.

– Aspaldian nago jabeturik, Ander. Besteok lanean gauden bitartean, bera hantxe lasai asko liburuak irakurtzen. Honela neu ere!

– Begira, Goiztiri, lainoak bere izarak zabaldu ditu ohearen gainean; laster igelak kroak eta kroak arituko dira –Juan Marik.

– Ama! Zenbat falta da gelditzeko?

– Gutxi!

– Beti esaten duzu gutxi, baina...

– Lasai, Goiztiri! Neuk erakutsiko dizut mapan non gauden –Juan Marik.

Bidaiarik onena atzamar batez alderik alde zeharkatzen duen mapa ei da. Kontxak zalantzak ditu onena ote den, baina azkarrenetakoa bai, behintzat, eta horrelako bat nahi luke oraintxe bertan euren helmugara heltzeko, begi bistan duten kilometroen astuna bultzatzeko.

– Gu hementxe gaude, eta taberna..., gutxi gora–behera, hortxe.

– Eta hori, asko da?

– Nola izango asko! –Juan Marik–Begiak itxi orduko bertan egongo gara.

Goiztirik ez dio oso konbentziturik begiratu Juan Mariri, baina pozik gelditu da azalpenarekin.

Autoari ez diote galdetu non gelditu behar duen. Autoak badaki: sarri askotan egiten du ibilbide bera.

Eta Boceguillasera zuzendu du barrukoen nekea. Eta orduan herrien hizkuntzak eta hizkuntzen herriak uztartu egin dira mostradore baten bueltan aulki herrenetan.

– Esnea eskatuko dut Goiztiri? –Kontxak.

– Esnea eta... zerbait gehiago, ezta? –Juan Marik.

Igogailua eskatu, eta gora egin du Goiztirik Anderren besoek lagunduta. Begiek ezker–eskuinera egin ostean, Goiztiriren erpuruak talka egin du txokolatezko basamortuko palmera batean. Gero, zerbitzariak ezpain–zapi batez belarritik helduta ekarri du pastel gizajoa.

– Litxarreriak gustatzen zaizkizu, Goiztiri! Niri ere bai, baina ezin dut jan; nire medikuak ez dit lagatzen –esan dio Juan Marik bere sabeltzarrari kolpe batzuk eman bitartean.

– Eta hori sei kilo galduta; atera kontua orain arte zer nolako zakua zuen gerri buelta horretan –Margarik.

– Ez esan horrelakorik, bestela haserretuko naiz.

– Haserretu! Zuretzat kalte! –Margarik.

– Goiztiri, zeu ere haserretzen zara? –Juan Marik.

– Ez dakizue ondo! –Kontxak.

– Bai? Ez da egia izango!

–Juan Mari honek zer pentsatzen du: txikiak, handiak, denok haserretzen gara noiz edo noiz –Margarik

– Nahi baduzu haserretu, baina ez gorde haserrea barruan, Goiztiri; ez da bat ere ona. Haserre zaude-

narekin hitz egin behar duzu eta esan zergatik zauden haserre. Badakizu nik zer egiten dudan?

– Zer?

– Itxoiten egoten naiz apurtxo batean haserrea etorritako lekutik joan arte.– Ama, pixagura naiz!

– Goazen komunera!

– Txiza komunean utzi, Goiztiri, bestela autoa gehiago nekatuko da –Juan Marik.

– Uuuu!

– Loteria erosiko dut ea aberasten garen.

Juan Marik ez du oraingoan esan loteriarik handiena espetxetako ateak zabalduko lituzkeena dela.

– Mesedez, Goiztiri!

– Zer gertatzen zaio gure poxpolinari? –Juan Marik– Kipula malko horiek, zer egiten dute txirrindularien antzera ziztu bizian aldapan behera?

Goiztiri negar batean etorri da: Kontxak komuneko atea itxi dio; baina Goiztiriri ez zaio gustatzen bere mundua ixtea; bere mundu txikiak espazio behar du gora eta behera ibiltzeko; Goiztirik aterik gabeko eremua irudikatzen du, ateak zabalik dituena, musuei, haserrei inolako trabarik egiten ez diena. Gainera, Goiztiriri ez zaio axola kuleroak orkatilen bueltan dituela atea zabalik pixa egitea.

– Ditxosozko ateak! –Kontxak.

– Prest?

– Bai!

– Martxa, bada! –Anderrek.

– Arindu zangook, Goiztiri, hotzak harrapatu baino lehen!

Alperrik aritu dira korrika. Haize–finaren hotzak bainila–izozkia bezala miazkatu ditu tabernaren epelak indarberritutako masailak.

Berriro martxan. Berriro aurrera. Bideetako autoen argiek piztutako pospoloak dirudite: desagertzean amatatu egiten dira. Autoen joan–etorrietan musika mailukaria ikustean gidaria entzuten da. Barrukoen begiak eskegitako trafiko erlauntzei begira daude: M30/ M40. Madrid. Inurri itxurako autoak elkarren ondoan doaz emeki–emeki zain dituzten bihurguneak ferekatuz.

– M40tik joango gara. Kilometro gehiago dira, baina lasaiago egingo dugu –Anderrek.

Juan Marik buruarekin baietz egin dio, eta berari ere indartu egin zaio Anderren asmoa. Presa dute autopistara iristeko. Eta autopistara iristean presa izango dute Jaenera heltzeko. Eta behin Jaenen presa izango dute hoteleko logeletara joateko. Eta horrelaxe, urtetan, etxera heldu arte.

Autoen joan–etorri bortitzak eraginda, ideia batek hartu du Juan Mariren burua; pentsatu du auto haiek denak ur korronte bizi baten mende doazela, eta ez daukatela xederik, ez doazela benetan inora; aurrera jarraituko dutela, eta labarretik behera amilduko direla.

*"…sigue el peligro por parte del Athetico de Madrid; se va al suelo Coromina, dice el colegiado que no pasa nada; protesta el Calderón… Este año ven al Corte Inglés y olvidate del frío. Tenemos cambio en el Pizjuan: se retira… Faltan dos minutos para las nueve y media y…"*

– Futbola ez, mesedez! –Margarik.

– Musika entzun nahi duzue? –Juan Marik.

– Baxu, mesedez! –Margarik.

Kontxak poltsatik musika–zinta bat atera, eta Juan Mariri eman dio ipintzeko:

– Abeslari hau ezagutzen duzue?

Kantaren uhinak jostatzen aritu dira zabaldutako hitzen tapakian:

*"…To consiste en querer levantar la cabeza arriba, luego lo demas. Busquen su pareja, vengan pacá, cójanse del brazo ábrazese lo más…"*

– Ez! –Anderrek.

– Ezta! – Juan Marik.

– Carlos Cano da. Abeslaria eta poeta.

Kontxa sentikor jarri da, eta atzera egin du urteen egutegian bere Andaluzian bizi izanikoa gogora ekartzeko, eskarmentuek, anekdotek eta bizipenek burmuinean utzitako arrastoak gogoarazteko. Batzuetan nahikoa da melodia baten printza, edo hitz erdi bat denboran bidaiatzeko. Bulegoan zegoen orduan Kontxa nagusia berria ematera etorri zitzaionean. Momentuan antzeman zion zerbait txarra esango ziola. Hizkuntzak sobran daude aur-

pegiek hitz egiten dutenean: *"Concha, yo siempre te he tenido aprecio, pero..."* Egun hartan jakin zuen elkartasunak prezio handia zuela: *"Tu eliges: rompe las relaciones con tu amigo etarra, o te despedimos de la empresa. Piensalo bien."* Erabakia aspaldian hartuta zuen. Kontxaren masailak luzatutako erantzun irribarretsuak izoztuta utzi zuen enpresako ugazaba.

*"... no pierdan compás: pasitos palante, ninguno pa atrás. A la calle, a la calle. Ay, que quiero que nos de el aire. A la calle..."*

Abestiaren letra entzuten ari zela, bere senarrak belarri gingilera xuxurlatutako ahotsa irudikatu du Kontxak, bortxatzeke, espetxeko funtzionariorik gabe, bihotzean atxikitutako ametsak uxatzen ez dituen mintzoa: –*Dantzatu nahi duzu?* Eta aurpegiz aurpegi ferekatu, gerritik oratu, eta dantzatzen hasi dira kantak sorgindurik. Sexu izatera ere heltzen ez delarik, besarkatzeko gogo hutsa soilik.

Oraingoan, Anderri egokitu zaio aspaldiko kontuak gogora ekartzea:

– Niri dantza lotua oso gustatzen zitzaidan. Golden, Ariznoa..., horiek ziren gure borroka gunerik onenak sareak hedatzeko. Euskadi taldeko ekipoek baino tropela handiagoa egiten genuen dantza eskatzeko. Gero, ohiko galderak: –*Nongoa zara?* –*Zer egiten duzu?* Pentsatze hutsak barregura ematen dit. Hori bai! Inoiz txiripaz baten batekin dantzatuz gero, praketan kabitu ezinik joaten ginen etxera.

Gero, Juan Mari eta Margariren txanda heldu da.

– Nik neskatan erraz egiten nuen –Juan Marik.

– Ez egin kasurik! Oso gazteak ginela ezagutu genuen elkar eta!– Margarik.

Goiztirik baino ez du falta bere kontuez aritzeko, baina Goiztirik badauka beste zer eginik entzundakoa baino garrantzitsuagoa denik. Autoen argitasunak eta besaulkiaren gogorrak Goiztiriren loaldi arina oztopatu nahi dute; etxeko ohearen gozoa behin eta berriro biztuarazten diote. Baina amak horretaz jabeturik–edo, ile endredatuen marazean atzamarrak sartu, eta… *"Egin lo. Sartu beldurrik gabe ametsen ohean. Oliba berdeak lo daude. Kableen argi indarrean pausatutako txoriak lo daude. Aititak emandako musuak lo daude"* esanda loak hartu badu ere, Goiztiriren ametsak esna daude: betileak ixten eta zabaltzen dira etengabe, eta orduan, amak askotan kontatutakoa ikusi du Goiztirik bere ametsetan: – *Ni Cadizen bizi izan nintzen eta Puerto de Santa Mariako kartzelan ezagutu nuen zure aita kristal baten atzetik. Baina hori baino lehenago, bihotzaren oskola zabaldu baino lehenago, pilo bat eskutitz idatzi nizkion. Batean, eskutitz-azalak gehiegizko pisua hartu zuen, eta postariak laguntza eskatu behar izan zuen espetxeetako zirrikituetatik bertako funtzionarioak konturatu gabe sartzeko. Hori hasiera batean izan zen, "s" eta "z" ahoskatzean zure herrikoek buelta ematen zutenean. Gero, musuak kartzelako kristalak zulatzen hasi, eta kalkamo-*

*nia baten antzera gelditu ziren zure aitaren aurpegian atxikituta. Eta horrela zu jaio arte, zu beste asko bezala kartzelako umea baitzara.*

– Begira, Goiztiri, kanpoan gradu bat dago –Juan Marik.

– Utzi bakean; lotan dago –Margarik.

Bide bazterretan bezeroen zain daude klubetako argi–keinukariak. Bide bazterretako aparkalekuetan, edozein modutan, sakabanatutako klines umelak itxura barik zapoen antzera ernaldu nahirik dabiltza saltari. Askoren festaren ajea nolakoa izango den erakusteko bonbillen kliskak zain daude, barruko neskatxoen begi goibelak bezala. Herri bazterretako seinaleak helmugara heltzeko adierazten dituzten kilometro zenbaki hotzak bezala, neskatxoarekin maitasuna egiteagatik ordaindu beharrekoa bezala. Halarik ere, auto barrukoek zain dituztenak etxekoen begi–ninietan piztutako kandelak dira. Horrelako paraje ilunetan aurrera egiteko argi egiten dietenak.

– Ciudad Real: Tablas de Damiel –Juan Marik

–Bertako txori asko gurekin batera hegoalderantz joango dira, udaberrian iparraldera berriro itzultzeko –Anderrek.

– Bitxia txorien migrazioa, ezta?

– Ez duzu inoiz irudikatu txoria izatea?

– Askotan! Gure Euskal Herriko mendi lepoetan aske ibiltzen den arranoa.

– Ze Margari, ondo?

–Barkatu, Kontxa! Espetxeko semearekin nengoen berriketan, etxeko sukaldean.

– Eta zer nahi zuen, bada?

– Ez zuen ezer berezirik nahi. Ipuintxo bat kontatzeko esan dit; umea zenekoa.

– Oraindik kontatzen diozu, ala?

– Ohera joan aurretik askotan. Kepa..., ez dakit nola esan, beti izango da nire etxeko umea.

– Ez egin negarrik, Margari!

– Ez naiz negarrez ari, Kontxa. Harro nago.

Nagusien gaiak oso mamitsuak dira oraindik Goiztirik ulertzeko; baina estalaktiten antzera gelditzen dira eskegita bere mundu txikiaren haitzuloan inoiz ulertuko duelakoan.

Mantxako ordoki zabaletan ametsen errota bueltaka aritu da etengabe txiki eta handien buruan, harik eta Don Quijotek eta Sancho Panzak geldiarazi egin duten arte.

– Zer moduz egin dugu lo, Goiztiri?

– On–do!

– Ondo ez! Oso ondo! Ez dakizu zer nolako zurrungak egin dituzun!

– Ez egin kasurik; gezurra da! –Margarik.

– Begiratu gora, zerura, Goiztiri; hortxe duzu amaren abizena.

Ilargia zeruan barrena arinki doa hodeien artean, bere bidaian mila forma arrotz marrazten dituelarik.

– Hori ilargia da, eta zure abizena Luna da –Goiztirik.

– Bale! Arrazoia duzu, baina familia berekoak gara.

– Goiztiri, badakizu zergatik dagoen ilargia batzuetan lodi eta beste batzuetan oso argal? –Juan Marik.

– Ez da–kit.

– Ez dakizula! Ilargia jaio, hazi eta betetzen delako nire sabela bezala. Gutxi jaten badu aire gutxiko globo baten antza hartzen du, baina asko jaten badu... Ilargiak ere gauza bera.

– Ez egin kasurik! Zoratuta dago –Margarik.

Laster Despeñaperrosera helduko dira. Laster Sierra Morenaren bihotzean egongo dira, eta Tio Pepe taberna ezkerrean utziko dute, baina bere ideologia eskuman.

– Ander, ezagutzen duzu Peperen taberna?

– Ez!

– Francoren lagun handia da: tabernako hormetan bere argazkiak daude.

Elur–bustiak bere soineko zuria jantzi du Jaengo iparraldeko bazterretan, amildegietako astigarrak izotzaren lurralde biluzietan. Tenperatura zero–azpian ezkutatu da, satorra bezala. Anderrek horretaz jabeturik abiadura mantsotu egin du.

– Goiztiri, begira, begira! Ez duzu ikusi?

– Ez!

– Untxi bat zegoen bide bazterrean, belarriak tente guri begira.

– Eta ezkutuan..., zezenak euren adar handiekin –Anderrek.

Gaur ez, ilun dagoelako, baina aurreko bisita askotan muinoetan mugitu gabe dauden gezurrezko zezenak kontatzen ematen du denbora Goiztirik, denbora arinago pasa dadin: bat, bi, hiru...

– Esan Anderri poliki gidatzeko: galdutako animaliak okerreko bidetik egiten badu... ez zapaltzeko.

Oreinak, untxiak, basurdeak... aske ibiltzen dira paraje hauetan, baina Goiztiriren aita ez. Bere aitak urte asko daramatza preso.

– Sakatu pantailako botoiak zure animalien ahotsak entzuteko –Juan Marik.

– Goiztiriren animaliak lotan daude ordu hauetan –Margarik.

– Jolin, Goiztiri! Lo–jantzia baino lotiagoak dira zure animaliak. Ez dakit jabea bezalakoak ez ote diren izango.

Gero eta gutxiago falta dute bidaiaren lehenengo zatitxoa burutzeko, espetxetik hiru kilometrora dagoen *Triunfo* izeneko hotelera ailegatzeko. Bidearen alde banatan lerrokatutako olibadiak non–nahi ikusten dira, eta olibondoaren fruituak zabaldutako usain sarkorra autoaren leihatilatik sartu nahian antzeman dute horrenbeste aldiz bidaia hau egindakoek.

– Goiztiri, eskolako jantokian patata frijituak jateko erabiltzen duzuen olioa horrelako zuhaitzetatik hartzen dute –Margarik.

– Eta oliba berdeak eta beltzak –Anderrek.

–Horrelakoak jatean kontuz ibili behar; batzuek barruan hezurtxo modukorik izaten dute, eta ez bazara jabetzen... –Juan Marik.

– Gure eskolakoek ez dute hezurrik.

– Ooo! –amak.

– Ander, ez duzu ikusi olibondoen artean gizon handi bat ezkutuan, liburu bat besapean... –Juan Marik.

–...poemak irakurtzen zegoena? – Anderrek.

– Kar–kar–kar!

– Horren ostean badakizue zer datorren, ezta? –Margarik.

– Jakingo ez dugu, bada! –Anderrek

Juan Mariren ganbara jadanik hitzez beterik dago; bere gustuko poema kontatzeko gogoa nabarmen gelditu da eta hori oso ondo dakite ondokoek. Gainera, Juan Mariren ateraldiak iraungipen–data handikoak dira, eta oso gogoko dituzte noiz edo noiz horrelako txantxak. Urte asko dira jadanik bazter hauetako txokoak ikusten, eta burumuinaren zigiluan atxikiturik dituzte, Miguel Hernández poetaren poemak bezala:

– Ea kapaz naizen osorik gogoratzeko.

– Osorik ez, mesedez! –Margarik.

*“Andaluces de Jaen Aceituneros altivos*
*Decidme en el alma quién,*
*Quién levanto los olivos.*
*Andaluces de Jaen*
*No los levantó la nada*
*Ni el dinero ni el señor,*
*Sino la tierra callada.*
*Andaluces de Jaen*
*Cuantos siglos de aceituna.*
*Los pies y las manos presos...”*

– Nahikoa, ezta? –Margarik.

Goiztirik oraindik ez du ikasi, baina laster ikasiko du. Hala eta guztiz ere, olibondoen inguruan antzematen den enbor okerren usain bakarra ez da hitzen ederrena, ez da poesiarena. Maiatzaz geroztik ekainaren bukaera arte preso batzuek (Jose Marik, Jagobak...) arazo handiak izaten dituzte patiora irteteko: hauek alergia diote olibondoen poleni, eta inoiz irteten baldin badira betaurrekoak eta oxigeno–mozorroa jantzita izaten da.

– Ama! Ama! Hantxe dago aita.

Begiek ez dute ezer ikusten, baina bertan daude, hor nonbaiten, ezkutuan, Goiztiriren aita, Juan Mari eta Margariren semea eta gainontzekoak.

– Orain, zertan egongo dira? –Margarik.

Burdinazko kamaina batean irudikatu ditu Kontxak, lastaira mehe, umel eta kirasdun baten gainean,

malgukien altzairuzko erpinak saihetsetan sentituz, ahoz gora etzanda, zirkinik egiteke begiak sabaian josita, goitik bisitan datorkien armiarmari begira; baina urduri bihar etxekoak eta lagunak datoz eta.

– Ezkutuko horma potolo horiek hitz egingo balute... –Juan Marik.

– Zenbat ipuin, zenbat kontu jakingo genituzke!

Tristurak, atsekabeak, malkoak..., baita pozak, ametsak, eta irriak ere iritsi berri diren gutunak irakurtzean, edota bisitak heltzean. Mordoak dira dagoeneko murru zatar horiek ezagutu dituzten sekretuak. Borroka luzeak egin dira horma hauen artean urte luzeetan. Beste kartzeletan bezalaxe. Gose greba luzeak, patioetan egindako plantoak... Urteetan borrokaren bidez lorturikoak ez dira makalak izan. Horixe baietz! Gosez, izerdiz, nekez... lorturiko aurrerapausoak. Txikiak batzuetan. Garrantzitsuak beste hainbatean.

Azken txanpan daude. Bihurgunea igaro, zuzen tarte luzea egin, eta ezkerretara gasolindegiaren atzean hotela dute zain. Goiztirik igerilekura zuzendu ditu begiak, eta ura ikusi du lotan, eta zera pentsatu du: udako bero handiak esnatuko du bertan bainatzeko. Goiztiri umeenean sartzen da, eta igerilekuak ezkutuan duen botoia sakatzen du burbuilak dantzan ipintzeko, eta kili–kiliak gorputz osoari eragiteko. Hori dena udan egingo du: uda urtaroen txapelduna da, dar–dar dauden bakarrak

izarrak izan ohi dira, beste guztiak izerditan blai daude. Baina orain negua da, eta hoteleko berogailuak piztuta daude sudurraren gorria berotzeko, eta Goiztiriren ametsak goxo–goxo epeltzeko.

– Hau kontrola! –Anderrek.

– Zer dela eta?

– Ea autoa aldatu dudan galdetu dit gasolindegiko morroiak.

– Zenbat ordu egin dugu Euskal Herritik?

– Lau t´erdietan irten gara Zornotzatik...

– Zazpi ordu pasatxo.

– Ondo, ezta!

Aurrean dagoen erlojuaren TIK–TAKaren kolpe sarkorrek egunak bereak egiteko minutu batzuk baino ez dituela falta adierazi nahi dutela dirudite. Laster iragana izango da eta inor gutxi gogoratuko da berarekin. Inork gutxi hartuko du aintzat egindakoa. Egutegiak hogeita lau ordu bizi izateko sortu du, eta gero akabo! Hil egingo da, hil egingo du. Ez da egongo askatuko duenik. Alperrik saiatuko da laguntza eske. Horregatik egunaren zoritxarra denborak zehazten du, presoaren kondena epaileak zehazten duen bezala. Dena den, pertsona bakoitzak egunaren tamaina nola bizi duen izkiriatzerik balego, eguna, bakoitzak bizi izaniko eguna, bizirik darraion eguna ez da inoiz hilko, hori baita pertsona bakoitzari bizi izateko indarra ematen dion eguna: bukatzen ez dena.

– Zer Goiztiri? Logura zara, ezta?

– Jota dago, gaixoa! –amak.

– Nagusiok ere logura gara; ez pentsa! Ohera joateko ordua da. Baina bihar... logura izarapean gelditũko da, eta guztiok elkarrekin gosaltzera etorriko gara, Goiztiri.

–Logelako giltzak hartu al dituzue, Kontxa?

– Bai!

Giltzaren zenbakiak hotzikara txikia eragin dio Kontxaren bizkarrezur nekatuari. Hantxe zuen esku artean bere senarrak espetxean orain arteko urte kopurua. Batzuetan kartzelan iragandako denbora luze horrek ez duela kontatzen ematen du; atzo zela kontu, San Fermin osteko atxiloketa beste lagun batzuekin batera, haize bortitza modu zakarrean aritu zela atearen kontra, eta barrukoak eraman zituela, baina bertakoen begirada goibela ez. Eta barrabiletan ostikada batzuk jo zizkiotela, edota burua baineran sartu, edota, agian, gauza biak egin zizkiotela. Baliteke, gauza horietaz hobeto oroitzea presoa atzo gertatutakoaz baino, su eta burdinaz errean geratu direlako.

Batzuk goiko solairuan, beste batzuk behekoan, baina guztiok etxekoak buruan.

– Gurea non dago? –Goiztirik.

– Hementxe dago: hogeita bosta.

Sarrailan giltza sartu, buelta bakarraz atea ireki, eta logela barruan daude jadanik. Goiztiri mahaitxoaren

gainean patxada ederrean dagoen agingailu hartu, eta telebista pizten saiatu da:

– Mesedez, Goiztiri!

– *Betizu* ikusi nahi dut.

Kontxaren bihotzak barre txikia egin du umearen ateraldia entzutean:

– Maitea, Jaenen gaude. Hemen ez dago ETBrik.

– …

– Ohera joan baino lehenago, zer egin behar?

– Hortzak garbitu eta txiza egin.

Biak batera sartu dira komunean, baina ama gortinaren atzean ezkutatu da. Urak ferekatutako gorputz biluziaren bazterretan txirrista egiten du gustura eta Goiztiriren hitzak mutuarazi ditu:

– Ama! Ama!

–Ez nuen entzuten, maitea!

Dutxatu ostean beti dago tantatxoren bat, guduetan bezala, esku oihaletik bizirik gelditzen dena, ikusitako kontatuko duena. Kontxak txorrota itxi, eta bainugelatik irten da.

– Zer?

– ...

– Esan, bada!

– Margari negarrez zegoen.

– Nola konturatu zaren! Negarrez zegoen, baina pozik.

– Bai?

– Batzuetan negar egitea ez da txarra. Negar egitean malkoak isurtzen dituzu eta barrukoa garbitzen laguntzen dizute. Tipula zuritzean ez nauzu inoiz negarrez ikusi?

– Bai, baina...

– Berandu da!

– Ama!

– Zer?

– Ez didazu Margarik bezala ipuinik kontatuko, ala?

– Tira, Goiztiri! Oso nekatuta gaude eta lo egin behar dugu.

– Kontatu!

– Aitak eta Jagobak idatzitako "Kaiola" izeneko ipuintxoa gogoan duzu?

– Zein da? Txoritxo polit batzuez eta ume batez hitz egiten duena?

– Bai!

– Gustatzen zaizu?

Egindako keinuak baietz esan du.

*–"Ipuin honen umeari zazpi txori oparitu dizkiote. Txoriak bi saskitan daude oso txikiak direlako, eta kolore guztietakoak dira: gorriak, berdeak, urdinak… Baina umea kexu da. Kaiola bat du, baina negarrez dago kaiola txikia delako.*

– Txoriak ez dira bertan sartuko, *esan dio aitonari goibelduta.*

*Orduan, aitonak bere aurrean ezarrita erantzun dio:*

– Kaiola nahikoa handia iruditzen zait.

– Zazpi ditut eta ez dute lekurik. Ez du kaiola hori nahi, *esan dio umeak.*

*Aitonak bere belauna batean ezarri du umea eta txoriei eta kaiolari begiratzeko esan dio.*

–Munduko txori guztiak sartzen dira bertan; baina horretarako atea zabalik eta txoriak aske utzi beharko dituzu.

*Hori entzutean haurrari irribarre handia atera zaio eta poz-pozik ireki du kaiola, eta txukun-txukun margotutako zeruan batzuek dantzatu eta beste batzuek kantatu egin dute umearen irribarre handia ikusita".*

– Aita dagoen lekuan, zergatik ez dute ipuinean bezala ateak zabalik uzten?

– Laster irekiko dituzte ate guztiak, maitea! Ikusiko duzu!

Kontxa oso berandu arte egon da ilunpetan, begiak zabalik; baina ez da bakarrik izan, ez! Kolore askotako ametsekin izan da berriketan: *"Beharrezkoa da lehenbailehen erromes-bizimodu hau bukatzea, beti alde batetik bestera; horrek arazoak sorraraziko dizkio maila guztietan: direla ikasketak, direla afektiboak. Bereziki afektiboak. Askotan, onartu beharra daukat ez diodala eskaintzen bere adinagatik behar duen arreta eta ardura guztia, baina ziur nago, zu itzultzean, nirekin egotean, bere bizia egonkortu ahal izango dugula, eta…".*

Halako batean, Goiztiriren ikarak errealitatera ekarri arte:

– Ama! Ama!

– Zer gertatzen zaizu, maitea?

– Hitz egiten egon zara eta...

– Hitz egiten egon naizela?

– Bai!

– Norekin?

– Ez da–kit.

–Lasai, laztana, dena pasatu da.

Ilargiaren elurtza eta gauaren beltza gustura ibili dira honantza, harantza izarrekin mintza. Orain etxera doaz, antza. Orain egunsenti ihintzak dute bultza. Argia errezela ertzetik sartu da, ezti–hari bezala, eta Goiztiriren aurpegi bigunean pausatu da egun onak emateko. Orduan, honek amaren masailean musutxo zaratatsu bat eman dio bart gauean entzundakoa oso ondo ulertu diola adierazteko.

Neguko goiz ilunak ohean geratzeko gogoa ematen du, eta beste puska batean esna gelditu dira maindire eta tapakietan ondo bildurik bata besteari begira.

– Ze gustura ohean! –Kontxak.

– Gu bai, baina... aita?

Batzuetan Goiztiriren gogoetek inolako gupidarik gabe urratu egiten dute Kontxaren mintza eta

egindako tarratadak ehotzeko haririk gabe uzten dio.

– Aita...

Ametsen zarata guztiak amatatu eta kanpoko zurrumurru urruna besterik iritsi denean nagiak uxatu, eta mugitu dira. Begitartea txukundu, hortzak garbitu, arropak jantzi, ileak orraztu, eta eskaileretatik behera joateko prest daude ama eta alaba.

– Goazen, Goiztiri, zain egongo dira–eta.

– Egun on Goiztiri! Zelako begi–zuloak! Bart gauean parranda ibili zinen, ala? –Juan Marik.

– Ez dakizu ondo!

– Baiiii?

– Ipuina kontatzeko, ipuina kontatzeko, eta hantxe...

– Nahi baduzu neuk kontatuko dizut –Juan Marik.

– Mesedez! Orain gosaltzeko ordua da –Margarik.

Isiltasuna mutua da, baina entzuten du. Isiltasuna mutua da, baina badaki ikusten. Isiltasuna mutua da, baina badaki maitatzen. Isiltasunak ez du hitzen beharrik. Kontxak zer edo zer esan nahi dio umeari, baina ez daki nola. Behin eta berriro eragin dio koilarari kafesnearen gozoak hitzen garratza orrazteko, baina alperrik; orrazia trabatuta gelditu da kirruen matazan, erruduntasun sentimenduetan. Gero eta zailagoa, gero eta gogorra-

goa egiten zaio Kontxari une hau. Nola azaldu umeari azaltzerik ez dagoena? Non aurkitu hitzik gabeko hiztegia? Kontxak Goiztiriri begiratu dio. Aulkia atze aldera eraman eta arnasa aldi motz eta zorrotzetan hartu ondoren, hasperen luze eta ozen egin du. Keinu bat eginda, eskuak mahai gainean ipini ditu, lasaitu nahian edo, eta burua poliki altxatuz hitza zuzendu dio.

– Goiztiri! –Kontxak.

– Zer?

– Ni orain banoa eta zu, txintxo–txintxo, Anderrekin gelditu. Bai, ezta?

– Goiztiri, guk autoa hartuko dugu, eta gora eta behera ibiko gara –Anderrek.

– Laster etorriko naiz maitea!

– Nik aita ikusi nahi dut.

– Badakit, baina ezin duzu.

– Zer–ga–tik?

Haatik erantzungo lioke barrukoa libratzearren, baina ezkutuko malko batek ezetz esaten dio: "Kraskatu egin dezakezu bere bihotz hauskorra".

– Beno, maitea, eman musu bat aitari emateko!

– Neuk eman nahi diot.

–Beno, gero arte!

Umea Juan Mari eta Margarirekin utzi du Kontxak, eta Anderrek eraman du espetxera gero berriro hotelera bueltatzeko:

– Eguerdira arte! –Anderrek.

Kontxak listua irentsi, eta hozka egin die ezpainei. Ez du negar egin nahi, ez du presozainek goibel ikusterik nahi, baina bai–ez dago.

Hodeiak astiro, maiestate guztiaz, iragaten dira Kontxaren gainetik, urruti zeruan, lautadaren haize freskoak higituta; ortziko argiak distira metaliko grisa hartzen du eguzkia hodeiren baten atzean estaltzen denean. Zuhaitzei olio usai hezea darie, aski garratz eta birikietan barrena aurreneko zigarroaren indarrarekin sartzen da.

–Tengo bis intimo con Jose Mari Sagardui.

Funtzionarioaren eskuen mugimendu baldarrek mahaiko paperak esnarazi dituzte. Ondoan eseritakoek goitik behera begiratu, eta irri egin diote Kontxari. Euren artean *"El negro"* ezinez dago, gizon handia, itxura aseptikoa eta biguntasun eta indarreko nahaste bitxia daukana. Kontxak ez du ondo ezagutzen, baina behin baino gehiagotan entzun ditu presoen ahotan bere gaineko iruzkinak. Horrelakoengandik kirtenkeria besterik ez du inork espero.

Korridore luzea isilik korritu du Kontxak, eta ezker–eskuin lerrokatutako plastikozko eserleku batean jesarri da. Ezinegonez, behin eta berriro begiratu dio orduari. Adinean aurreraturiko emakume bat eseri zaio alboan, aulki librean, eta ABC irakurri du. Lehenengo begi–kolpea moda–orrialdeetan atxikitu ditu begiak. Hurrengo orriak ez du

ezer ekartzen, antza, eta aurrera egin du. Ezkerrekoan, diruak lehen baino gutxiago balio du. Eskuinaldean, hizki handietan, Terrorismoaren Biktimetakoak eta *Basta Ya*–koak daude: Sabater, Calleja... Euskal gizartearen zati batek pairatzen dituen mehatxuak salatu dituzte eta "terrorismoaren biktimak babesteko" eskatu diete alderdi politikoei. Eta orduan zera pentsatu du Kontxak: eurak ere mehatxatuta daudela, baina eurek ez dutela inolako aukerarik komunikabideetan beste batzuk moduan dramaren gainean eurena kontatzeko, eurenak bestenak bezala dramaren dimentsioa hartzen baitu. Ondokoak irribarre egin dio.

Kontxak burua altxatu du atearen zarata entzutean, eta zutik jarri da zerbait harrigarrik eraginda bezala.

– ¿Qué haces tu aquí Concha?

– ¿Y tú?

–Yo...

Ezin sinisturik dago Kontxa, aurrean duen funtzionarioa umea zeneko lagunik onena da: Paloma. Etxeko ur–ontzian zeuden arrain gorriak, behin eta berriro, askatzeko esaten ziona: "¿Te gustaría que te tendrían en una jaula?" Eta orain bera da bialdutako gutunak irakurtzen dituena, bere intimitatea urratzen duena, gizonaren ametsak giltzaz ixten dituena, Goiztiri beldurtzen duen ateari danbatekoa ematen diona. Bai, bera da.

– Pueden pasar.

Burua biratzea bururatu zaio Kontxari, baina Palomaren takoien hotsak berarengandik urruntzen direla entzutean aurrera egin du.

Abiadura handiko begiradek talka egin dute topo egitean, eta zati txiki–txikiak egin dituzte:

– Zer gertatzen zaizu, Kontxa? –Jose Marik.

Baten batek esan zuen arreta ipiniz gero ametsak igarri egiten direla, eta horrelaxe da: Kontxarenak ozenki entzuten dira.

– Esan zure lagunari gaur gauerako planik ez dudala, eta...

– Tontolapiko halakoa!

Jose Mariren besoek har dezaten irrika sentitu du Kontxak. Bere eskuek masailak estutzen dizkiotela sumatu du; sekula emakume bat ferekatu ez duen batek bezala begiratu dio. Biak bakarrik daude gela batean, horretarako egokitutakoan. Inolako apaingarririk gabekoan. Baina berdin die, ez dute horren beharrik, euren artekoa nahikoa da giroaren grisa koloretsu egiteko. Urduri daude, hasiberriak dirudite. Kontxak bere ipurmasailei begira ikusi du Jose Mari, eta irriño batez erantzun dio. Pentsamenduen konpasak eraginda balantzaka dira gorputzak... Minutu labur batzuk baino ez dira izan. Aski, hala ere. Gero, Kontxarengana jiratu, aurrera makurtu, eta altzoan gelditu da. Eta poliki–poliki lasaitu dute grinaren indarra, eta gogoeten unea heldu da:

– Gure poxpolina nagusitzen hasita dago, ezta?

Aitaren hitz egiteko modu suabe, gozoa beti gustatu izan zaio Kontxari.

– Ez dakizu, gainera, nola!

Goiztirik gurasoei egindako marrazkia erakutsi dio Jose Mariri: baloi bat dute eta elkarri jaurtitzen diote. Bitartean, Goiztiri amaren sabelean dago eurekin jolasten, baina Goiztiriren ostikadak oso leunak dira eta ez diote amari minik egiten.

– Gure txikitxoak, familia handitzea nahi du, ala?

– Lau urte dituelako, bestela maiteminduta dagoela esango nuke: bere mundu itxian bizi da, eta errealitateari ihes egiten dio askotan, eta amets arraroak izan ohi ditu.

– Ametsak izatea ez da txarra! Zuk ez duzu izaten, ala?

– Bai, baina Goiztirirenak...

– Adin horretan oso ohikoak dira; umeak sormen handikoak dira; gauzak eta egoerak asmatzeko erraztasun handiak dituzte. Hori ez da txarra. Helduok askoz zoriontsuagoak izango ginateke barruko umea aterako bagenu.

– …

– Oraindik ez didazu esan nor den bere gustuko mutil lerdenik.

– Ez dakit, bada, bere aita ez ote den.

– Uuuu!

Jose Marik zerbait gehiago gehitu nahi izan dio elkarrizketari, baina ezin izan du, presozainak ateari

emandako kolpe zakarrek denbora amaitu dela esan baitiote.

–Vayan saliendo por favor.

– Zure lagun hori ikusten baduzu, esaiozu detaile bat izateko.

Ura hatz bitartean bezala joan da denbora, konturatzeke. Jose Marik buruan jarri dizkio eskuak eta begiradaz musu bat eman dio.

– Gero arte, Kontxa!

Maite duen pertsona atzean utzi, eta egoeraren amorrua madarikatuz alde egin du Kontxak.



– Aspaldiko, Goiztiri! Non ibili zara? –Juan Marik.

– Ahhh! –Anderrek.

– Esan, mesedez!

– Ja–e–nen.

– Txurroak jaten, ezta?

– Baiii!

– Badakizu zergatik asmatu dudan?

– Ezz!

– Oraindik bibotearen marka duzulako.

– Ez egin kasurik. –Margarik.

– Orain bazkaltzeko gogorik izango duzu? –Juan Marik.

– Zer moduz, Goiztiri? Nirekin gogoratu zara? –Kontxak.

Buruaren keinuak baietz esan du, baina Goiztiri apurtxo bat haserretuta dago: amak bitan ikusiko du aita, eta berak behin baino ez du ikusiko. Aurpegi handia du amak. Hurrengo batean eskolako lagun batekin etorriko da bakarrik, eta horrela berak ere bitan ikusiko du. Hori dena batean esan zion amari, negarrez zegoela.

– Aitak badakizu zer esan didan?

– Ezz!

– Musu asko dituela gordeta, eta prestatzeko.

Goiztirik ez dio ezer esan amari, baina bera ez da aitaren musuen beldur.

– Eup!

– Eup!

Juleca izeneko tabernan daude, espetxetik oso gertu, eta bertan bazkalduko dute gehienetan bezala. Osatutako taldea gero eta handiagoa da: elkartasun puzkailuak puztu eta puztu egiten du borobila Goiztiri amaren zangoetan ezkutatu bitartean. Guztiak etorri dira kaiolatutako txoritxoen ederra entzutera, egoeraren gogorra arintzera. Kontxak presozainarekin gertatutakoa kontatzeko tentazioa izan du, baina ez dio inori esan, ezkutatu nahi du bere sekretutxoa.

– Juan Mari, zer nahi dok?

Mostradorearen gainean elkarren ondoan ipinitako edariek kolore desberdina hartu dute eztarritik behera egin aurretik.

– Zelako laino itxia sauan Burgosetik gertu!

Elkarrizketen hitzek pisu handia hartu dute, eta Goiztiri bide bazterreko radarra bezala gogoeten abiadura neurtzen egon da. Askotan ziztu bizian egin dute aurrera, eta hitzen esanahia neurtzeke gelditzen da.

– Isolamenduan daude guztiak.

Hamahiru urte daramatza Goiztiriren aitak isolamenduan. Lau ordu baino ez ditu egiten ziegatik kanpo eta gainontzeko orduak nola edo hala ematen ditu. Batzuetan oinetakoa eskuan, eta belaunak zoruan, labezomorroen atzetik safari izugarriak egiten ditu. Baina horretan ez da bukatzen Afrika beltzeko fauna: dutxetan ere jarraipena izan ohi du. Zoologia kontuan edozein adituk zikinkeriaren arteko fauna aztertzeko sekulako aukera izango luke paraje hauetan.

Baina bera ez da bakarra, berarekin daudenak ere egoera beretsuan daude. Gosaldu, bazkaldu eta afaldu txabolon egiten dute; hori baita euren ondasun guztia. Eta hori gutxi balitz, presoen barruko ametsak ez irteteko burdinazko plakak ipini dituzte leihoetako ziegetan. Halarik ere, alperrik aritzen dira pentsamenduei trabak ipintzen, Goiztirik eta

gainontzeko umeek ekarritako ilusioak hormaren lodiera zulatu egiten baitute ipuinetako okilak bezala.

– Atzokoa badakizue, ezta?

Preso baten lagunek auto istripua izan zuten Granadarako bidean. Oraingoan zorte handia izan dute. Autoak kalte materiak handiak jasan zituen, baina eurek ez dute zauri larririk izan. Ez dute ezer esaten, baina pentsatu, bai!: *Hurrengoa neu izan naiteke.*

Beste batzuetan hitzak motelago heltzen dira Goiztiriren belarrietara:

– Para comer tienen: pollo al ajillo, ensalada Juleca, choto, gazpacho, perdiz...

Gehienek gauza arinak eskatu dituzte, baina batek gauza asko, eta Goiztirik zera pentsatu du: *Honek non sartuko du guztia?,* eta, orduan, Juan Mariren sabela etorri zaio burura.

Zerbitzariak, bitartean, elkarren ondoan ipinitako mahaiak txukuntzen aritu dira Euskal Herriko bazter guztietatik etorritakoek puzzlea osatzeko.

– Goiztiri, intxitxu batek esan dit zure eskolako gustuko lagunak Ibon melocoton duela izena, baina bakarra da ala gehiago duzu? –Juan Marik.

– Ge–hia–go.

– Zigor, Unai... –Kontxak.

– Eta Aner.

– Bai, laztana!

– Noren ondoan jartzen zara eskolan jateko?

– Zigorren ondoan.

– Eta, nolakoa da Zigor hori? Oso jatuna da? Ze, oso jatuna bada patata–frijituak kenduko dizkizu.

– Ez! Ez dio ezer kentzen. Batzuetan trukatu: Goiztirik Zigorri pure beltza ematen dio, eta Zigorrek Goiztiriri frituak. –Kontxak.

– Frituak gozoak dira!

Gaur Goiztiri oso berritsu dago. Gauza asko kontatu die mahaikideei. Eskolan txabusina jantzita ibiltzen da, eta goiko poltsikoan amama Begoñak idatzitako izena du begi bistan:

–*Lehengo egunean Unaik Asierri atzamarka egin zion, eta odoletan joan zen andereñoarengana negarrez. Ikastolako txakurrak Lobi du izena, baina Anerrenak Zuri.*

Goiztirik ez du txakurrik, baina maite ditu. Dena den, batzuetan beldurra ematen diote; bereziki zaunka egiten badute. Alvaro da bere ile–apaintzailea, eta oso maite du Goiztiri. Ilea mozteaz gain, azazkalak ere pintatzen dizkio, eta jende asko baldin badago ile–apaindegian, Goiztiri ez aspertzeko, erratza ematen dio zoruan sakabanatutako ileak jendeak ez zapaltzeko. Kalean ikusten badu *Goiztiriiii!* Esaten dio, eta ondoko guztiek buelta ematen dute. Horrelakoetan Goiztiri gorri–gorri ipintzen da, baina berdin dio: handik gutxira ahaztu egiten du.

Asko jaten duen gizona Goiztiriren ondoan ezarri da, baina ez du ahoa zabaldu guztia jan arte, kafea

eskatu arte. Gero, bere txanda izan da eta Kontxarekin ihardun du berriketan:

– Ez nuen Goiztiri izena ezagutzen. Iparraldekoa izango da, ezta?

Eta orduantxe karlisten sasoietara jo du Kontxak izenaren istorioa azaltzeko. Goiztiriaz baliatzen omen ziren karlistak ustekabean liberalak harrapatzeko, aurre egiteko.

– Mugitu ipurdiok!

Espetxera joateko ordua heldu da. Kontxa momentu batean komunera joan da, eta bere burua ikusi du ispiluan Paloma ondoan. Gero, orraztu, eta ezpainetako lapitzak aztarnak utzi ditu. Eder joan nahi du espetxera Jose Marik ikus dezan.

– Ander, hori masailen gorria! Alkoholemia–kontrolik badago, zer? – Juan Marik.

– Zozoak beleari ipurbeltz –Margarik.

– Kar–kar–kar!

Gero, auto ilara osatu dute eta espetxera hurbildu dira.

Goiztiri eta ama eskutik helduta daude espetxeko kanpoaldean. Amak indar handiz estutzen du Goiztiriren eskua, eta honek zera pentsatu du: "Ama, hemengo autoak ez dira mugitzen; zeren beldur zara? Txantxangorria bakarrik mugitzen da hostotik hostora".

Zuhaitzak biluzik daude; aspaldian erantzi dute euren soineko dotorea. Sasoi hori oso gustatzen zaio

Goiztiriri; sasoi horretan aita oso pozik egoten da ziegaren zirrikitu txikietatik igarotako hosto sikuei begira: Goiztirik bialdutako eskutitz–azalak direla pentsatzen du.

Gaur Goiztiririrekin umetxo asko daude: Jagobaren semea, Mikelon; Pakorena, Peru; Gautxoririrenak, Asier eta Xabi; Keparenak, Malen eta Enaiz. Azken hau txikiena da, eta igel baten antzera ibiltzen da: pauso bat eta euupp! Eskuak lurrera. Beste pauso bat eta euuupp! Eskuak amarenera. Ume gehienak espetxeko sarreran daude lotuta, gisa–katea osatuz. Hauek ere aitak ikustera etorri dira amekin. Hala ere, euren artean badaude beste ume batzuk gora eta behera aparkalekuko auto nekatuen matrikulei erreparatzen. Hauek apurtxo bat handiagoak dira, eta hauek badakite kartzelan esnatzea gogorra dela edozein amets delarik ere, eta ziega iluneko egunek gau amaiezinen antza dutela. Eta askoren bakea kafesnea bezalakoa dela: kafe gutxi eta esne asko.

– Hau geuk ekarri dugu.

– Eta guk hori.

Auto batzuek Espainiako ikurrina dute; beste batzuek (Ubeda) Jaen eta zezena. Eta beste askok EH eta SS, eta BI, eta NA, eta VI.

– Gurea politagoa da.

– Baina gurea azkarragoa.

Auto hauek atsedena hartzen daude patxada ederrean gero berriro kilometro asko egiteko. Dena

den, badago bat etengabe bueltaka, PGC ipurdian daukana.

– Ezkerretara Jaen dago; eskumatara Madrid, Bailen.

– Eta gora, Euskal Herria.

Goiztiri aitaren etxera begira dago, kanpotik oso handia eta grisa da. Irribarrea aspaldian galdu duela dirudi. Hormaren itzala ez da zuhaitzena bezalakoa. Zuhaitzen itzala mugitu egiten da, ez da horren sikua, eta batzuetan irudiak egiten ditu, beste forma batzuk hartzen ditu. Hormaren itzalean aurpegiak luzeak dira eta nekatuta daude: ziega barruko presoaren askatasun mugimenduek airubetak eragiten dizkiete. Gainera, aurrean hesi bat du, eta atzean horma baten gainean lorerik gabeko arantzak libertatea urratzeko, edo aitaren ametsak bertan kateatzeko, edota zauriak eragiteko. Eta orduan, txorien askatasuna mirestu izan du Goiztirik, inolako eragozpenik gabe sartzen eta irteten ikusi baititu. Zapelatzak zirkuluak margotzen ditu bere hegatzez, Juan Mariren gustuko *K7* taldean inspiraturik legokeen, baleta interpretatuz bezala.

Garitan dagoen gizononezkoa Goiztiriri begira egon da, eta honek mingaina atera dio.

– Ze Goiztiri! Zeri egiten diozu barre?

– Ezeri ez!

Gaiztotzen hasita dago Goiztiri, eta horrek maitagarriago egiten du.

Bertako gizon batzuek kapelak jantzita, eta bibote luzeak dituzte. Hauek Goiztiriren amak bezala hitz egiten dute, eta musika berbera dute.

–Vente txatxo.

– Corta la musica; haz el favor.

Hauen gurasoak ere giltzapetuta daude, baina ez dira politikoak, eta ez daude euren etxeetatik oso urrun. Ez dira euren antzera gora eta behera ibiltzen. Ez dute eurek beste kilometrorik egiten. Espainiako geografia ikas dezaten aukera euskaldunei bakarrik eman diete. Goiztiri hamabi egun zituela joan zen lehenengo aldiz Langraizera amatxoarekin aita ikustera. Gero, bi urte bete arte Puerto de Santa Mariara joaten zen. Askotan autobusez, inoiz tren azkarrean. Batean, umearen kotxea trabatuta gelditu zitzaion Kontxari trenaren korridorean: *Ez dakizue zer nolako estualdia eta lotsa pasatu nuen.* Baina anekdota horietan ez da bukatu Kontxa eta Goiztirirena. Hamar hilabete zituela Goiztirik bisita batean, mahai gainean utzitako botoia irentsi egin zuen. Eskerrak aitaren tenpleari, bestela... : *Ezin izango dut inoiz burutik kendu ordukoa; ikusi nuenean Jose Mari untxi baten antzera buruz behera Goiztiri helduta eta kolpeka!*

Tartetxo bat baino ez dute falta kartzelaren arima zapaltzeko; tartetxo luze bat, barruko harrak espaloiaren zoruan utzitako arrasto mukitsuak kateatu egiten baititu nagusien eta umeen pauso baldarrak. Pentsamenduak klis eta klas dabiltza izorratutako

Kontxaren semaforoan, eta batzuetan Paloma ikusten du lausotuta, gora eta behera.

Bat–batean, mamuak baliran, hormatzarraren zirrikituetatik zaldizko poliziak banan–banan irten dira euren legea zabaltzera, inguruko zuhaitzak baino tenteago doazelarik. Poliki–poliki, eurengandik urrundutako zaldien apoen zarata motelduz joan da bide bazterrak azken berbaroa irentsiz. Bitartean, grisa ondoan, eta urdina goian, garita moduko sarrerara abiatu dira Kontxa, Goiztiri eta gainontzekoak. Batzuek poltsak eskuan, eta guztiek etxekoak buruan. Zeruaren urdinean begira duten odei kumeek ere gauza bera egin dute: hauek ere gurasoei darraie.

Espetxeko atean langa bat dago, etzanda lotan. Goiztiri azpitik igarotzen saiatu da, baina etxolako gizon ilunaren begiek gelditzeko esan diote.

– Hortik ez, Goiztiri! Mesedez!

– *Vengo a visitar con la cría a Sagardui,* hitzak egin ostean, nortasun–agiria eta famili liburu eman dizkio Kontxak uniforme urdinaren besaburuan kabu–galoiak erakusten dituen gizonari. Gero, emandako datuak pantailan aritu dira saltoka, eta bertan atseden hartu dute. Bitartean, Kontxaren begiek –ezkutuan dauden kamerak bezala– inguruko bazterrak arakatu dituzte Paloma topatu nahian. Non egongo ote? Eta lanaldia bukatuta, eta atzazalak, betileak, ezpainak pintatutik, eta lepo-

koak, eskumuturrak, eraztunak apaindurik, eta bihotza bakarrik ikusi nahi izan du Kontxak.

– El siguiente.

– Jagoba Terrones.

– El siguiente.

Ate bat zeharkatu, korridore laburra atzean utzi, eta hantxe zuten zain aurrera egin aurretik lehenengo ataka. Goiztiriren begiek egindako keinuak atzean utzitako atea zabaltzen aritu dira, baina argitasuna galdu dute.

– Lasai, Goiztiri!

– Ama, esan ez ixteko!

PI!PI!

–Las llaves –presozainak.

PI!PI!

–Los zapatos.

Ate bat, ate bi, hiru ate...

Pentsamenduek bakarrik egiten dute aurrera zaratarik gabe. Ate asko kanpoan, ate–kideak barruan.

Berriro PI!PI!

– Abra la bolsa.

Gaur zorte izan dute. Gaur sagartxoak eta *petit suisse*ak aurrera egin dute inolako trabarik gabe. Baina beste askotan ez, eta orduan Kontxa haserretu egiten da, eta handiak esaten dizkio funtzionarioari:

– ¿Qué no puedo pasar la manzana? ¿Qué quiere? ¿Qué coma la niña un yogur toda la tarde?

Beste hainbat espetxetako lagunak bezalaxe, emakume hauen xarma dastatzeko parada daukate hemen ere. Eurek bideratzen dituzte gutunak eta bisita baimenak. Beste hainbat tokitan bezala, uneko marka nork gaindituko solasgai izaten dute patioetan egindako ibialdietan:"Hiru hilabete gutunik gabe egon ondoren, hamabost hartu nituen atzo" –batek; "hiru hilabete kosta zaio soilik Cervantesen hizkuntzan idatzitako maite zaitut Caceresetik hona hel dadin" –beste batek. Auskalo, zenbat gutun "galdu" diren bidean helbidera ailegatu gabe! Euskaraz idatziz gero, segituan galdetzen diete zer idatzi duten. Emakume hauen umoarenaren arabera izango ote da?

– Usted verá: la visita o la merienda.

Zaila da horrelakoetan odol gaiztorik ez egitea. Zaila da barrukoari eustea. Eta orduan, entzuteko moduan ondokoari esaten dio besteari gustura esango liokeena:

– ¿Sabes cuál es el problema de ésta? Que no folla; es tan fea que no folla –Kontxak.

Eta horrela lasaiago joaten da, barruko behazuna espetxean utzita. Baina gaur ez, gaur bihotza bigunago dute presozainek, antza. Gaur Goiztirik ganorazko askaria izango du, eta zer edo zer sobran uzten badu aitari emango diote: aitak ez du oso

ondo jaten. Dena den, kontuz ibili beharko dute, behin Goiztirik emandako sagartxoa poltsiko barruan sartu, eta presozainak ikusi zion:

– No sabe usted que no puede pasar la fruta. ¿Qué quiere? ¿Qué le ponga un parte?

– De todas formas me va a poner. Si no es por la manzana va a ser porque llevo el paso cambiado.

Beste askotan presoak umiliatzen saiatzen dira, eta bisita aurretik eta ostean biluzarazten dituzte, baina presoak euren duintasunari eusten saiatzen dira.

– Si quieres me quitas tú los canzoncillos, pero yo no me los voy a quitar.

Kartzelarien harrokeria gero eta nabariagoa da; kantinan gauzak erosteko aukera gero eta txikiagoa; aktibitateetan parte hartzeko gero eta zailtasun handiagoak. Luzea zerrenda!

Sufrimenduaz elikatzea gogoko dutela ematen du. Presozainak oso dibertitzen dira Goiztiriri egindako iruditxoak txikitzen ziega arakatzen dutenean. Baina miaketa bakoitzaren ondoren, Jose Marik berriro ekiten die iruditxoei, sorbaldei gora eraginez, oso berea duen amorrua eta umorea nahasturik.

Umeen pauso arinak patioko txoko banatara zuzendu dituzte, eta hantxe dute zain, beso zabalik, maitasun–sareak kateatuko duen irribarrea.

–Aita!Aita!Aita!

Musu bat, bi musu, hiru, lau... Musu potoloak, arinak, kopetan, begietan, masailetan, zein baino zein goxoagoak.

– Zer moduz maitea?

– Ondo!

– Gaur, zer ekarri didazu?

Lehenengo ordua aitak eta umeentzat izan ohi da, eta ezkutuko eta ageriko kontuak elkarri kontatzeko aprobetxatzen dute. Bitartean, amak amekin egoten dira.

Goiztirik, hilean behin, hutsik egin gabe, poltsikoan gordeta, istorio bat ekartzen dio aitari egunerokoa alaiago egiteko; aurrekoan kilkerraren kanta izan zen, gaur...

– Itxi begiak.

– Ezin ditut apurtxo bat ireki?

Buruaren mugimenduak ezetz esan dio. Begiak itxi eta olatuen zarata entzuteko eskumako belarriaren zulotxoan oskola ipini dio Goiztirik.

– Eta orain esan non zauden.

– Eman denbora pixka bat pentsatzeko.

– ...

– Mendian ez; txorien kanturik ez dut entzuten. Itsasoan, agian?

– Bai!

– Orain ez galdetu nongo hondartza den zarata hori!

Horrelakorik ez dio galdetuko; halarik ere, Goiztirik oso ondo daki itsasoaren ele horiek nondik datozen. Goiztirik aitona bi ditu: bata Santos, Zornotzakoa, beti enkartelada eta manifestazioetan egoten dena, eta bestea Manolo, Cadizekoa. Itsasgizona ez bazen ere, itxura hori hartzen zion Goiztirik aitona Manolori, bere pipa ahoan. Orain zeruan dago, baina sasoi batean hondartzara eramaten zuen Goiztiri, eta itsas bazterretik, nagusien antzera, gora eta behera ibiltzen ziren, eta putzuetan sartzen ziren. Hori bai, algak oinetan kateatuta geldituz gero, Goiztiri haserretu egiten zen.

– Jolin!

– !No seas tan mica! !Mira cuántas caracolas! Seguro que nos quieren contar algo.

Hondarraren gainean olatuek ekarritako oskolak hartu, eta belarrian ipintzeko esaten zion:

– ¿Qué oyes Goiztiri?

Hasiera batean, oskolaren beste aldean ezer gutxi entzuten zuen Goiztirik. Gero, poliki–poliki, ohitu zen urrutikoarekin komunikatzen, eta kablearen beste aldekoak aipatzeke esandako guztia ulertzen hasi zen, bere ama bezala: aitarekin telefonoz hitz egiteko hamar minutu baino ez ditu astean. Zer esan tenore horretan? Batzuetan poza, besteetan negarra, inoiz samina; garestiegia ezer gutxi esateko.

– Tranquila, no te preocupes si no oyes nada. La música de las sirenas estará muy lejos de la costa.

Batzuetan eurekin batera txakur bat joaten zen, eta *UAU! UAU!* Egiten zien. Orduan, Manolok egur zati bat hartu, eta urrutira jaurtitzen zuen haginetan kateatuta ekartzeko. Goiztiriri oso gustatzen zitzaion txakurra korrika ikustea busti–busti eginda leku batetik bestera. Gero, txakurra nekatuta egoten zenean Kontxak makila hartu, eta hondarrean idazten zuen, eta zera esaten zien itsasoak ekarritako olatuei*: "Idatziz eta ezabatuz, idatziz eta ezabatuz ikasiko duzu idazten, Goiztiri, hondartzaren hondarrean maisuaren begiradapean".* Goiztirik oso azkar ikasi nahi du idazten aitari gauza asko kontatzeko, eta zigilu baten antzera atxikitutako musuak postarien eskutik bidaltzeko. Kanpoan dagoena ez da jabetzen, baina presoei idaztea oso garrantzitsua da. Patiora irtetean momentuan konturatzen dira nork izan duen eskutitzik eta nork ez. Aurpegiaren kolorea aldatzen zaie, ederragoa da, nahiz eta ahaleginak egin besteak ez goibeltzeko.

Ordukoa da aitari emandako oskola. Ordukoak dira etxeko tiradera bateko sabelean gordeta daudenak.

– Eta zuk, zer ekarri didazu?

– Eskumuturreko hauek, eta zure ametsekin batera hegan egiteko... paparrean jartzeko kometa hauek.

Kometak oso maite ditu Goiztirik: kometen hariak oso ondo eusten die ametsei.

– Ah! Eta jolasteko pilota hau.

Pilotaren nortasuna nolakoa den ikusteko, aitak erakutsitako keinua egin du Goiztirik: botea zoruan ematearena, alegia. Eta ados dagoela itxura eginda, korrika abiatu dira pilotalekura:

– Goazen, Goiztiri, libre dago eta.

– ...

– Aukeratu zure gustuko pareta, Goiztiri.

Elkarren antza handia badute ere, betikoa hautatu du: *Hauxe* esan eta paretari begira gelditu dira biak. Eta aurreko hilean pilotaren kolpeek horman idatzitako arauak irakurri dituzte partida ekin aurretik, arau husterik egon ez dadin.

– Ondo, Goiztiri!

– Oso gogor jotzen duzu, aita!

Hemen ez dago botilerorik etentxo bat egiteko. Hemen eurek erabakitzen dute noiz gelditu.

– Aita, horma horren gainean dauden arantza horiek zertarako dira? Txoriak ez sartzeko?

– Ez maitea! Horiek ni ez irteteko dira.

Oraindik oso gaztea da jakiteko, baina aita batean saiatu zen, Granadan zegoela, txorien antzera ormatik gora igotzen. Baina orduan, hegalek ezin izan zioten eutsi pisuari, eta kumea habiatik erortzen den moduan jauzi egin zen lurrera. Zoruan minez ikusitakoak ez bide ziren oso txorizaleak, ez zuten maitasunez jaso; lagundu beharrean kantuaren gozoa isilarazten saiatu ziren gorrotoz. Dena den, ez zuten

lortu, Goiztirik, Kontxak eta beste askok emandako laguntzari esker laster inoiz baino txoritsuago ikusiko baitute bere gustuko mendietan.

– Pilotari ona izateko esku biak erabili behar, Goiztiri. Hori ez ahaztu!

Amak ez du ezer esaten, baina aitak behin eta berriro harrapatu du eurei begira. Amak alabak bezala bere txanda nahi du–eta. Eta orduan, haizeak hostoak ipini ditu dantzan; orain bikotea aukeratzea baino ez dute falta. Goiztiriri Malerekin egokitu zaio.

– Kaixo!

– Ze kolore nahi duzu, Goiztiri?

Honek margoak ekarri ditu.

– Erakutsi.

Gaur eguraldi ederra dute jolasteko. Gaur eguraldi aproposa dute presoek begien mintza argitan ipintzeko. Horrelako momentuak oso garrantzitsuak dira aprobetxa dezaten, aske zireneko distira ez galtzeko, hainbeste urte kartzelan egin ostean, Goiztiriren aitaren begien urdina ez iluntzeko.

– Margoen koloreek ortzadarra osatzen dute.

Orain dela hilabete bat harri–txintxarren gainean pausatutako oinatzak lozorrotik esnatu dira eta izerdi patsetan bukatu dute. Batzuk futbolean aritu dira dena kontrolatu nahi duten zuhaixken begiradapean. Eta eskolako lagunen artekoetan bezala *Gola!* oihukatu dute. Bitartean, teilatuaren hegalean

aspaldian hiltzera kondenatutako baloiak oraindik ez duela itxaropenik galdu dirudi: askatasun–ostikada nork emango dion amesten dago. Beste batzuek panpinak ekarri dituzte jolasteko, eta autoak lasterketak egiteko. Goiztirik gustura ekarriko luke etxeko eskalestria, baina ezin izan du: debekatuta dauka ziztu bizian ibiltzea. Auto gorriak irabazten du beti, eta horiak galdu. Baina hori ez da aitzakiarik umeen irudimena dantzan ipintzeko.

– Auto lasterketa egingo dugu, Malen?

– Bale!

Hori baino lehenago, Goiztiri harriak hartzera joan da, eta Malenek, bitartean, zoruan bideak, zubiak... margotu ditu txukun–txukun autoak noraezean ez joateko.

– Zein duzu nahiago, harri zapala ala borobila, Malen?

Gero, eskuetan harri bana hartu, belauniko jarri, eta motorra berotzen aritu dira tartetxo batean BRUN! BRUN! lasterketari ekin aurretik:

– Bat, bi, hiru...

– Eta lau!

Harriak martxan ipini, eta ezker–eskuinera egin dute, eta hodeien gorria zintzilik zeruan, porlanen gorria zutik teilatuan, autoaren gorriak abiada bizian zeharkatu du helmugako pankarta azpitik.

– Ama!

– Zer?

– Harritxo bat dut zapata barruan.

– Ea bada! Erantzi zapatok, maitea!

– ...

– Zapata eta kordoia: bata mardula, bestea mehea eta luzea. Bata kamutsa, bestea zorrotza, bata astuna, bestea arina, biak desberdinak, baina bata bestearentzat...

– ... eginak.

– Aitak ez dakizki horrelako kontuak.

– Nola jakingo dut ez baldin badidazue erakusten?

Inork ez du ezer esan, baina guztiak elkarrekin egoteko unea heldu da: mugimenduak sinkronizaturik daude. Ez dago laguntzen ez duenik. Gela batetik batzuek mahaiak atera dituzte, *kontuz!* beste batzuek aulkiak, *hementxe!* Gero, mahaietan edaria, jatekoa eta gosea ipini dituzte apain–apain.

– Zenbat gauza!

Batzuek olibei egiten diote kolpe, beste batzuek patata–frijituei.

– Ze gozoa!

– Coca Cola, mesedez!

Hozkailuko ur azpiko edariak izurde baten antzera atera du burua:

– Hartu!

Gaur hotz handia egiten du, baina udan mukururaino betetzen dute hozkailu urez, eta freskagarriak bezala egoten dira hozkailu barruan txikienak: Eliz, Peru, Hainaz....

– Nik beste bat nahi dut.

– Tori!

– Ama!

Esku dardaratiak poltsen barnekoak arakatzen aritu dira eta sagartxoak, *petik suisse*ak... atera dituzte, gero ume gosetien tunelean sartzeko.

– Dena jan behar duzu handia izateko!

– Begira horrek zer nahi duen!

Umetxoek jandako ogi–bitartekoaren estalkia haizeak eraman du bolatxo bat eginda, eta artatxoriak ezkutuko apurrak jaten ahaleginak egin ditu. Baina ez da bakarra, itsasikararen buztana ere gora eta behera dabil inolako lotsarik gabe, inolako ikararik gabe.

Behin sabela betetakoan, elkarrekin jolasteko tenorea heldu da. Kepak txirristaren eskaileretatik gora egin du gero buruz aurretik behera egiteko.

– Uuuuppaa!

Gero, Asierrek jarraitu dio, eta... beldurtienek harri txintxarrak jaurti dituzte txirristatik behera, eta balin–balan joan dira irribarreen aurretik: kartzelan barre egitea oso ona da. Ez da erreza, baina komeni noiz edo noiz egitea funtzionarioek giltzarrapoz preso duten barrea askatzeko.

Horren ostean, aitek umeak arrelepo ipini dituzte, eta alderik alde ibili dira korrika patioan.

– Txapeldunok! –esaten dute, baina espetxe barruko jolasetan inork ez du galtzen, guztiek irabazten dute.

Zabuan aritu denik ere egon da espetxeko aire astuna oinetakoen oinzolez uxatu nahian. Eta hormaren aurka besoak paratu, begiak itxi eta bat, bi, hiru kontatu ostean mugimendu dardaratiak geldiarazten saiatu dena:

– Maider

– Jolin! Geldirik nengoen.

Baina espetxe barruko jolasek autotxokeetako talkek eta irribarreek bezala denbora mugatua dute.

– Vayan saliendo.

– Jolin!

– Ez dago eskubiderik!

– Oraindik ez dugu bukatu!

Goiztirik keinu bat egin dio aitari, baina honek ez dio ondo ulertu. Gero, bihotza erabili du hitzez komunikatzeko:

– Aita!

– Zer?

Etorri gurekin etxera.

– Ezin naiz maitea!

– Zer–ga–tik?

– Zure ondoko bi gizon hauek ez didatelako lagatzen.

Etentxo bat. Berriro Goiztirik.

– Amak bibotedunari helduko dio, eta nik besteari.

– Bai, baina kanpoan gehiago daude, maitea!

– Salgan ya.

Berriro martxan. Berriro aurrera. Etxekoen irribarrea bihotzean, eta hurrengo bisita eguna buruan, etxera doaz atzera.

– Esta carta es para usted.

Kontxak ez du ikusi, baina Paloma leiho batetik begira zuen.



**ataramiñe** giltzapeko zein sasiko literatura gizarteratzen ahalegintzen dela gauza jakina da. Eskuartean daukazun *Lunaren Goiztiri* hau, ordea, ez da gartzela zein sasi edo desherritik datorkigun lana, ezta ere enkarguz idatzitako liburua Jose Mari Sagardui Moja *Gatza*, euskal preso politiko eta Goiztiriren aita denaren omenaldirako 25 urte preso betetzera doanean.




EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK



**Juan Luis Mugertza Unanue**, elgoibartarra jaiotzez; egun, Berangon bizi da. Euskal Filologian lizentziatua eta bigarren hezkuntzako irakasle da. Hauxe duzue argitaratutako bere laugarren lana *Lehenengo aldiz*; *Aruma, urrezko oihanean*, eta *Astoari konfiturak* liburuen ondoren.

Lehenago euskera irakaslea izan zen eta Santurtziko AEKn aritu ostean, *Bilbo Zaharra* euskaltegian urte batzuk eman zituen. Txorizale amorratua izateaz gain, munduko bazterrak ezagutzea ditu gogoko ahal duen guztietan.